# DOLORETACO
# AMA VIRGIÑAREN
# NOVENA.

AITA AGUSTIN CARDAVERAZ
JESUSEN COMPAÑIACOAC
EGIÑA.



OBISPO JAUNAREN BAIMENAREQUIN.

TOLOSAN:
Mendizabalen alargunaren moldizteguian 1855 garren ur-tean.

# DOLORETACO AMA VIRGI-
# ÑAREN NOVENA.

Devocio au aldan moduric oneneau eguiteco, Ama Virgiñaren aurrean belaunico jarri, eta beti ondo ciñatu, *Nere Jesu-Cristo Jauna*, edo Acto Contriciozcoa biotzetic eguin, eta guero eguneroco Oracioac asitcen dira onela.



O Virgiña Maria, Jangoicoaren Ama miragarria, eta zure Semearen Pasio ta Eriotzan dolorez ta penaz alde gucietatic betea! Baldin Jaunaren vorondatea bada, Novena onetan nai dedan favorea nic alcanzatcea, zure Doloreac-gatic esca zaiozu berari; eta bestela bera ta zu obeto servitceco ondoen dagoquidan gracia Amen.

## LENENGO EGUNECO ORACIOA.

¡ Nere Ama Santisima, eta martiri guztien Erreguiña ! ¡ Cer dolorea zure biotzac artuco zuen, araco zure Seme Jesus Angustietaco calean Gurutcearequin icusi, eta Calvariora jarraitu ciñionean ! Orduan arc bere gorputcean, eta zuc biotcean igaro cinduzten tormentu guztiac, Aita Eternoari presenta zaiozcatzu, nere pecatuen damuzco penitencia eguiñaz, zuen amoriora biurtu nadin; eta indazu Novena onetan escatcen dedan favorea, Jaunaren gloriaraco eta nere salvacioraco baldin bada. Amen.

*Emen Ama Virgiñaren Dolore guztien eta zazpi jaquiñen erreverencian zazpi Ave Maria eta gloria esan, eta guero.*

## EGUNEROCO ORACIOA.

¡ O munduco Amaric afligituena, ta pecatarien Ama bacarra ! Or daucazu Gu-

rutcean zure Seme laztana, eta Aita Eternoari ezqueintceco sacrificio edo ofrendaric onena. Ori da gure culpen erremedioa ta zor gucien pagu osoa, ta guztiac baño andiagoa. Escazayozu, bere Seme maiteari beguiratu, eta gure pecatuac barcatceco bigundu dedilla: eta pecatari eta infiel guciac bere graciara ecarri ditzala.

*Emen fede eta confianza osoaz bere biotza jaso, ta Ama Virgiñaren bitartez bacoitzac nai duen favorea escatcen du, eta guero esango du onela.*

## JESUS CRUCIFICATUARI ORACIOA.

¡Nere Jesus maitea! Bada zure amorioac gurutcetic zure Ama dolorosoaren mantu-pean utci, ta dicharic andienaz eguin guinduen beraren dolore ta negarren umeac. Arren Jauna, zure eriotza-gatic betico vicitza iguzu: eta zure odolaz ta aren negarraz garbitu ta señalatuac becela, gorde gaitzatzu zure biotcean orañ eta gure eriotzan. Amen.

## BOST LLAGA SAGRADUEN ADORACIOA.

¡ Nere Ama doloretacoa ! Zure Semeac nigatic artu cituen bost llaga preciosoac zure aurrean adoratu nai ditut : ta oriec adoratcean, zuc iduqui cenduen Espiritu ta amorioa beti iduqui nai nuque.

## EZQUERRECO OÑECO LLAGARI.

¡ O nere Jesusen Llaga preciosoa ! Biotz guztiaz adoratcen zaitut, ta orregatic ezcatcen dizut, Jauna, nere pauso ta ibillera gaiztoaquin eguin dizquitzudan ofensa gucien barcacioa. *Pater Noster*, *eta Gloria Patri.*

## ESCUICO OÑECO LLAGARI.

¡ O nere Jesusen Llaga preciosoa ! Biotz guztiaz adoratcen zaitut, eta orregatic ezcatcen dizut, Jauna, nere hitz ta obra gaiztoaquin eguin dizquitzudan ofensa gucien

barcacioa. *Pater noster*, *eta Gloria Patri*.

## EZQUERRECO ESCUCO LLAGARI.

¡ O nere Jesusen Llaga preciosoa ! Biotz guztiaz adoratcen zaitut, eta orregatic ezcatcen dizut, Jauna, nere beguiaz ta beste sentiduaz eguin dizquitzudan ofensa gucien barcacioa. *Pater noster*, *eta Gloria Patri*.

## ESCUICO ESCUCO LLAGARI.

¡ O nere Jesusen Llaga preciosoa ! Biotz guztiaz adoratcen zaitut, eta orregatic ezcatcen dizut, Jauna, nere memoria, entendimentu ta vorondateaz eguin dizquitzudan ofensa gucien barcacioa. *Pater noster*, *eta Gloria Patri*.

## COSTADU SAGRADUCO LLAGARI.

¡ O Nere Jesusen llaga preciosoa ! Biotz guztiaz adoratcen zaitut, eta orregatic ezcatcen dizut, Jauna, nola zure biotza lantza gogorraz josi, eta zure Ama Santisi-

marena Ezpata zorrotzac, ala nere animá zure amorioaz betico jósi dezazula; bada ill nayago det zu ofenditu baño. Amen. *Pater noster*, *eta Gloria Patri.*

## BOST LLAGAI SAN FRANCISCO JAVIERREC EGUNERO EGUITEN CIEN ORACIOA.

¡ Nere biotceco Jaun eta Jaungoico Jesu-Cristo ! Bost llaga Gurutcean, eta beste ecin contatu ala zure Pasioan, gure amorioac ar-erazo cizquitzutenac-gatic escatcen dizut, zure odol preciosoaz redimitu guinduzunoc, arren zure ontasunac gorde, eta zure gloriara eraman gaitzala. Amen.

℣. Ora pro nobis Virgo Dolorosissima.
℟. Ut digni efficiamur promisionibus Christi.

OREMUS.

Deus, in cujus passióne secúndùm Simeônis Prophetiam, dulcisiman ánimam gloriósæ Virginis & Matris Mariæ doloris gládius pertransivìt, concêde propitius;

ut qui transfixiônem ejus & passiônem venerándo recólimus, gloriósis méritis & précibus ómnium Sanctôrum Crucifidèlitêr astántium intercédentibus, pasiônis tuæ effectum felîcem consequâmur. Qui vivis & regnas per omnia secula seculorum Amen.



*Bigarren egunean ciñatu, Actu Contriciozcoa eguin, eta lenengo Oracioa eta beste atcenecoac beti egunero esaten dira.*

*Bigarren Oracioa egun bacoitceraco da urrengoetatic bat.*

## BIGARREN EGUNECO ORACIOA.

¡Nere Ama Santisima, eta martiri gucien Erreguiña! ¡Cér dolorea zure biotzac izango zuen, araco Gurutcearen ondoan zutic eta firme ceundela, zure sabeleco frutu bedeincatua arbola artan josiric, ta gure pecatuac-gatic agonian icusi cenduenean, eta zure biotza dolorezco ichaso bat, eta zure beguiac negarrezco iturri bi eguiñic! Arren zure piedadeaz be-

guira zadazu, nere culpen eguiazco penitenciaz zure Semearen Odol preciosoan nere anima garbi dedin; eta indazu Novena onetan escatcen dedan favorea, beraren gloriaraco eta nere salvacioraco baldin bada. Amen.

*Emen zazpi Ave Maria, eta lenengo eguco beste Oracioa*

## IRUGARREN EGUNECO ORACIOA.

¡ Nere Ama Santisima, eta martiri guztien Erreguiña! ¡ Cer dolorea zure biotzac izandu zuen, araco zure Semeac S. Juan amatuaren contura zu utci, eta aren buruan gure guztien Ama eguin cinduenean, ta zure Doloreen umeac gu izateco, zure contura utci guinduenean! ¡ O Amaric gozoena! Beguira zaguzu bada, eta zure mantu-pean gorde, ta Jaunaren voronda-tea dan becela, vici berri santu bat eguiten lagundu zaguzu; eta iguzu Novena onetan escatcen degun favorea, beraren gloriaraco eta gure salvacioraco baldin bada. Amen.

## LAUGARREN EGUNECO ORACIOA.

¡ Nere Ama Santisima, eta martiri gucien Erreguiña ! ¡ Cer dolorea zure biotzac izango zuen, araco zure Seme Jaunari, Judu eta Gentil ichuac, zure beguietan alaco burla ichusi eta gaizqui esacac, aren escárnioan, lotsaric gabe esatean ! ¡ O cer tormentua zuc oriec aditcean, eta zure Semea Aita Eternoari bere Espiritua aguindu, eta iltcen icusi cenduenean ! Pena gucien gogorren onegatic arren beguira zadazu neri, culpa guciac eguiazco damuz garbitceco, ta Jesus inocentea ta nere salvadorea beti alabatceco: eta indazu Novena onetan escatcen dedan favorea, beraren gloriaraco eta nere salvacioraco baldin bada. Amen.

## BOSTGARREN EGUNECO ORACIOA.

¡ Nere Ama Santisima eta martiri gucien Erreguiña ! ¡ Cer dolorea zure bio-

tzac artuco zuen, araco zure Semea Gurutcean illic icusi ezquero, eta tormentuac igaro ciralacoan, icusi cenduenean Soldadu bat, lantza jaso eta Jesus onaren biotza idiquitcen, eta zurea erdiratcen! Orduan saiets Sagradutic, gure salvacioco atea idiqui, eta odola eta ur garbia Iturri artatic irteten icusi cenduen. Zure tormentu eta dolore onegatic arren beguira zadazu, eta odol precioso eta ur gozo artan nere anima garbitcen lagundu zadazu, Ceruco ate artatic seguru sartu nadin: eta Novena onetan escatcen dedan favorea, beraren gloriaraco eta nere salvacioraco baldin bada. Amen.

## SEIGARREN EGUNECO ORACIOA.

¡Nere Ama Santisima, eta martiri guzien Erreguiña! ¡Cer dolorea zure biotzac artuco zuan, araco Jesus zure Semeari aranzazco Coroa, eta iltce odolez beteac atera ciozcatenean! ¡Ay ta nolaco fede eta amorioaz zure escuetan artu, eta adoratuco cenduen! Orduan igaro cenduan

dolore eta pena tristea gatic, arren beguirá eguidazu, nere begui eta beste sentiduetan aranza oriec, eta iltce oriec nere biotcean josi ditzadan, eta pecatu gucien gorroto vici batequin guztien barcacioa izan dezadan: eta Novena onetan escatcen dedan favorea, Jaunaren gloriaraco baldin bada, Amen Jesus.

## ZAZPIGARREN EGUNECO ORACIOA.

¡ Nere Ama Santisima, eta martiri gucien Erreguiña ! ¡ Cer dolorea zure biotzac artuco zuan, araco Seme divinoaren gorputza era artan, bere diñaco Aldareric ederren eta garbienean, edo zure beso virgiñaletan artu cenduanean ! Au da zure Angustietaco pauso icusgarria. ¡ Ay, ta nola beguiratuco ciñion gorputz divino Espiritu Santuac zure Sabelean eguin zuen ari ! Len guztiz ederra, eta orañ tormentuz itsusitua, eta nere culpac-gatic deseguiña. Zure penaen artean arren beguira niri, orien lotsaz ta damuz bien piedadea billatcen dedan oni; eta Novena one-

tan escatcen dedan favorea, bien gloriaraco eta nere salvacioraco baldin bada Amen.

ZORTCIGARREN EGUNECO ORACIOA.

¡ Nere Ama Santisima, eta martiri gucien Erreguiña! ¡Cer dolorea zure biotzac artuco zuan, araco zure Semearen burua, escuac eta oñac, eta gorputz guztia icusten jarri ciñanean ! Zure negar tristeaquin aren arpeguia garbitu, eta untatceco eta obiraco jancitceco, dolorez beteric eman cenduen. Zure animaco pena orregatic, arren, beguira zadazu neri, eta nere pecatuen penitencia eta vicitza berri santu bat eguiten lagun zadazu, zure Semea nere biotcean betico artu eta gorde dezadan; baita ere Novena onetan escatcen dedan favorea alcanzatceco, beraren gloriaraco eta nere salvacioraco baldin bada. Amen.

BEDERATCIGARREN EGUNECO
ORACIOA.

¡ Nere Ama Santisima, eta martiri guz-

tien Erreguiña ! ¡ Cer dolorea zure biotzac artuco zuen , araco zure Seme laztana obian sartu eta utci cenduenean , eta penaz illa becela bacarra , eta zure biotceco vicitza gabe gueldítu ciñanean ! ¡ O Ainguëruac eta criatura guztiac ! Zuen Erreguiñari lagun eguiozute bere luto eta Soledade triste onetan. Arren nere culpaen barcacioa zure doloreac-gatic Jauna-gandic alcanza zadazu ; eta Novena onetan escatcen dedan favorea, beraren gloriaraco eta nere salvacioraco baldin bada. Amen Jesus.



## AMA VIRGIÑARI SAN AGUSTIÑEC

### EGUIN CION ORACIOA.

Acorda zaitez , ¡ O Virgiña Ama, piedade guciaz betea ! Iñoiz ere edo seculan ez dala aditu, zure amparora etorri danic, eta bere nequeetan zuri deitu dizunic, desamparatua izandu dala. Ni bada con-

fianza onequin animaturic, zu gana las-terca biurtcen naiz ; Virgiña guztien Virgiña Ama, zugana nator ; zure aurrean negarrez esque nago. Ez arren bada, ó Jaungoicoaren verbo edo hitz divinoaren Ama, nere hitzai gor eguin, baicican nere oneraco oriec enzun, eta onez adiezazu. Au escatcen dizut zure Semearen pasio ta eriotza gatic, eta zure dolore guztiac gatic. Amen Jesus.



*Toledoco eta Sevillaco Cardenal Jaunac eun bana eguneco barcacioac, edo Indulgenciac eman dituc emengo devocio bacoitza eguitea gatic.*

*Orobat Pamplonaco Obispo Jaunac eman ditu beste berroguei eguneco Indulgenciac.*